# DOMINGO ITURRATE DOHATSUaren mezea

## (Pzk06b /Gaisoen Pazkoa)



**PLAZAn AGURRA**: Ibilteuna hasteko

**Egun on** guztioi. Ondo etorri. Asko bertokoak zaree. Pero otros muchos habéis venido de Algorta, con motivo de este acto en honor del **Beato Domingo de Iturrate**. Sed bienvenidos.
Haren jaiotetxeraino oinezko bidea egingo dogu, berak, Domingok, sarri egin eban bidea.
Ese camino que él recorriera en su infancia lo vamos a recorrer nosotros teniéndole presente y fijándonos en algunas características de su vida: *su enfermedad y su dedicación a los enfermos*, por aquellos de que el sexto domingo de pascua es el domingo dedicado a los enfermos.
Hauxe izango dogu, ba, senideok gure hausnarketa gaia ibilbide honetan: *Domingoren gaisotasuna eta gaisoenganako bere grina eta begiramena*.

**R/. Dohatsu bihotz garbiak**
**ikusiko dabe-ta Jainkoa**.

*1.-Dohatsu / bihotz barnez / pobreak:*
*haiena baita / zeruetako / erreinua.*
*Dohatsu / otzan eta / eztiak:*
*agindutako / lurraz baitira / jabetuko.- R/.*

**R/. Dohatsu bihotz garbiak**
**ikusiko dabe-ta Jainkoa**.

*2.-Dohatsu / negarretan / direnak:*
*gozotasuna / izango dute /Jaunagandik.*

*Dohatsu / zuzen gose / direnak:*
*haien goseak / bere asea / izango du.-R/.*
*3.-Dohatsu / errukior / direnak:*
*ziur baitute / lortuko haiek / errukia.*
*Dohatsu / garbi diren / bihotzak:*
*Haiek baitute /Jaun zerukoa / ikusiko.- R/.*

**R/. Dohatsu bihotz garbiak**
**ikusiko dabe-ta Jainkoa**.

*4.-Dohatsu /bakezale / direnak:*
*beren izena / izango dute / Jainko seme.*
*Dohatsu / zapalduak / direnak:*
*haiena baita / zeruetako / Erreinua.-R/.*

**R/. Dohatsu bihotz garbiak**
**ikusiko dabe-ta Jainkoa**.

*5.-Alaitu / eta poztu / zaitezte:*
*ederra baita / zuen saria / zeruetan.*

**R/. Dohatsu bihotz garbiak**
**ikusiko dabe-ta Jainkoa**.

**San Balendinen**
Santutasun goseak Domingo fraidetzara eroan eban. Baina konbentuan sartu eta astebete batzuetara etxera bialdu eben gaisotasun bat agertu izan jakolako, beste fraidegaiei nahastatuko eutsen bildurrez. Hementxe hasi zan bere bizitzako kuruzbide luzea.
La vida del Beato Domingo está marcada por la enfermedad. Si su sed de santidad lo llevó al convento, lo devolvieron a casa a las pocas semanas, porque se le presentó una enfermedad, que se temía contagiara a sus compañeros. Su resignación lo llevó a aceptar su exclaustración porque, a su juicio, sería temporal. Él volvería al convento.
Galdetu geikeo geure buruari, ea bizitzan zehar sortzen jakuzan ezbeharren aurrean zelan erantzuten dogun? Behar

bada «**kauenka**», bazterrak erre beharrean. Ba daukagu, ba, zer ikasirik Domingo Dohatsugandik, eta hari zer eskatu: *gure bizitzako ezbeharretan ez daigula azalkeriaz jokatu, jakin daigula baino sakontzen eta geure bokazinoa gauzatzen*.

***OTOITZA***

Santutasun gosez jantzi zenduan, Jauna,
zure morroi Domingo apala.
Que su sed de santidad,
que le hizo sobrellevar la enfermedad,
sea para nosotros ejemplo y fuerza
para afrontar las dificultades que nos depare la vida.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez.

**Santiagon**

La pendiente se nos hace dura. Puede reflejar las *pendientes* que nos depara la vida. Los santos no estaban exentos de ellas: más bien *las supieron afrontar*.
Zenbat *aldatz* aurkitu geikezan bizitzan zehar! Lautu deiguzala eskatzen deutsogu Jainkoari? Santuek harei aurre egiten jakin eben, ustea Jainkoagan jarriz, gizakiaren mugatu izateari dagokiozanak dirala-ta.
Salgamos del pietismo que considera las dificultades de la vida *pruebas que Dios nos envía* para santificarnos. Fijémonos en Domingo que, desde su sed de santidad, supo afrontar las calamidades con tesón, sabiéndolas inherentes a la limitación humana.
Destruyamos el ídolo al que llamamos Dios, al que pedimos salud, o una vida despejada de dificultades, calamidades, penas, dolor…, y descubramos —como Domingo— al Padre que, por amor, sufre las injusticias de los humanos, hasta la crucifixión de su propio Hijo.
Gure siniskerian, Jainkoari osasuna eskatzen deutsogu, eta gatx guztiak kendu deiguzala… Eta ezin dogu ulertu errugabeen heriotzea, lurrikarek eta uholdeek eragiten dabezan milioika heriotza errugabe… Zelan onartu daike hori Jainkoak? —aldarrikatzen dogu.

Domingoren erantzuna makalengana hurreratzea izango da, gaisoak zaintzea eta hareen poza izatea… Ezbeharretan Jainkoaren deia entzutea eta besteengana hurreratzeko aukera lez eskertzea.

***OTOITZA***
Zure jakiturian, Jainko indartsua,
makalak eta mugatuak egin gaituzu,
guk ulertu ez arren, alkarrenganatzeko dei lez.
Que, a ejemplo de Domingo,
que se dedicó con especial cariño a os enfermos,
oigamos en las desgracias la llamada de Dios
a compartir nuestra salud con quienes sufren.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez. Amen.

**Elizan sartzean**

ZURE ETXERA GOAZ, JAUNA,
HAUXE DA POZA DAUKAGUNA.
*Uri batua uri argi, gure bihotzen lotugarri;*
*zure herritarrak lerroz-lerro zugana gatoz bihozbero*.

**OTOITZA**
Santu bakarra zaran Jainko errukiorra.
Zeuk aukeratu zenduan Domingo Iturrate dohatsua,
zeure Seme Jesusen jarraitzaile izateko;
Zeuk hornitu zenduan Espiritu Santuaren dohai ugariz;
egizu, haren irakatsiei jarraituz,
eguneroko gauza txikietan maitasun handiz jardun daigula,
danean eta denen gainetik, zeure gogoko izan gaitezen.
Zure Seme Jesukristo.

**Hitzaren Liturgia**

***Lehenengo irakurgaiaren sarrera-oharra***
*Batzuentzakoa baino ez da Jainkoa? Betetzaileentzakoa, lege-zaleena, otoi-zaleena, eliz-zaleena…? Zer gertatuko litxakie guzioi, Jainkoak danak ditula maite (danek ditulako*

*bere seme-alaba) jakingo balebe? Ba, behar bada, ezlirateke morroio lez bizi izango, seme-alaba lez baino…*

*Espiritu Santuaren dohaia jentilen gainera ere jatsi zan.*

**Apostoluen Eginak liburutik** (Eg 10, 25-26. 34-35. 44-48)

Egun haretan, Pedro sartzera joiala, Korneliok bidera urten eutsan eta oinetara ahuspeztu. Baina Pedrok zutituazo eban, esanez: «Jagi zaitez, gizaki hutsa naz ni ere».
Orduan, honan berba egin eban Pedrok: «Orain jabetzen naz Jainkoak ez dauala bereizketarik egiten, begirunea deutsana eta beraren guraria beteten dauana, edozein herritakoa dala ere, onartzen dauala baino».
Oraindino Pedrok berbetan zihardual, Espiritu Santua jatsi zan berbea entzuten ziharduen guztien gainera. Pedrogaz etorritako fededun juduak harriturik egozan Espiritu Santuaren dohaia jentilen gainera ere jasten zala ikustean. Izan ere, berbeta arrotzez hitz egiten eta Jainkoa handiesten entzuten eutseen.
Orduan, esan eban Pedrok: «Ukatu al daikie inork Bateoko ura guk lez Espiritu Santua hartu daben honeei?» Eta Jesu Kristoren izenean bateatu egiezala agindu eban. Ondoren, egun batzuetan bertan gelditzeko eskatu eutsoen Pedrori.

*Jaunak esana*

***Erantzun salmoari oharra***
*Ba daukagu Jainkoa goresteko zio (edo motibo)rik. Larregi madarikatzen da Jainkoaren izena gure artean. Salmugileare eskutik, goretsi daigun Jainkoaren izena, anai-arrebekaitik* ***ondo esateko*** *eran.*

**Erantzun Salmoa** (Sal 97, 1. 2-3ab. 3cd-4. 5-6)

**R/. Agertu dau Jaunak aurrean Beragandiko garaipena.**

Kanta Jaunari kantu barria,

egintza harrigarriak egin ditu-eta:
garaipena emon deutso bere eskumeak,
bere beso santuak. R/.

Bere garaipena ezagutuazo dau Jaunak,
bere salbamen-egintza agertu nazinoen aurrean.
Ez dau ahaztu bere maitasuna,
Israel herriari deutson leialtasuna. R/.

Munduko bazter guztiek ikusi dabe
gure Jainkoaren garaipena.
Egin irrintzi Jaunari, lur osoa,
egin poz-oihu eta kantu, jo soinua. R/.

***Bigarren irakurgaiari oharra***

*Larregi aitatzen da **maitasuna** gure artean. Eta ikusten ditugu zelango ekintzak egiten diran: zenbat emakume diran aurrean erabiliak eta erailak... Bilatu daigun Jesusen maitasuna. Entzun.*

II. Irakurgaia

*Jainkoa maitasuna da.*

**San Joan Apostoluaren lehenengo gutunetik** (1 Jn 4, 7-10)

Seme-alaba maiteok: Maitatu dagigun alkar, maitasuna Jainkoagandik datorrelako, eta maite dauan guztia Jainkoagandik jaioa da eta ezagutzen dau Jainkoa. Maite ez dauanak ez dau ezagutzen Jainkoa, Jainkoa maitasuna da-eta. Jainkoak deuskun maitasuna honetan agertu zan: Jainkoak bere Seme bakarra bialdu ebala lurrera, gu haren bidez bizi izan gaitezan. Honetan datza maitasuna: ez guk Jainkoa maite izatean, Harek gu maite izatean baino, eta bere Semea gure pekatuen parkamen-oparitzat bialdu izatean.

*Jaunak esana*

***Ebanjelioari sarrera-oharra***

*Jesusek bere ikasleei eskatzen deutsen maitasuna ez da*

*edozelangoa: konpromisuzkoa edo interesatua. Entzun deiogun arretaz, ebanjelioari harrerea eginez. Abestu daigun ALELUIA.*

Ebanjelioa

*Ez dau inork maitasun handiagorik*
*bere bizia adiskideen alde emoten dauanak baino.*

**Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik** (Jn 15, 9-17)

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Aitak Ni maite izan nauan lez, holantxe maite izan zaituet Nik ere zuek; iraun sendo nire maitasunean. Nire aginduak beteten badozuez, nire maitasunean iraungo dozue, Nik ere, Aitaren aginduak bete ditudalako, haren maitasunean irauten dodan lez.
Hau esan deutsuet nire poza zeuekan izan dagizuen, eta zuen poza bete-betea izan daiten.
Hau da nire agindua: maitatu dagizuela alkar, Nik maite izan zaituedan lez. Ez dau inork maitasun handiagorik bere bizia adiskideen alde emoten dauanak baino.
Zuek nire adiskide izango zaree, Nik agindua beteten badozue. Aurrerantzean ez deutsuet morroi deituko, morroiak ez dau-eta jakiten nagusiak zer egiten dauan; zuei adiskide deitzen deutsuet, nire Aitak jakinazo deustan guztia adierazo deutsuet-eta.
Ez ninduzuen zuek aukeratu Ni, Neuk aukeratu zinduedazan zuek, eta eginkizun hau emon deutsuet: edonon frutu ugaria eta iraunkorra emon dagizuela; holan, Aitari nire izenean eskatuko deutsazuen guztia emongo deutsue.
Hauxe agintzen deutsuet: maitatu dagizuela alkar».

*Jaunak esana*

**Homilia**

**HERRI-OTOITZA (Eskariak)**

† Elizearen altxor preziatua dira *gaisoak*; euren bidez

hurreratu geintekez Jainkoaren errukira eskale, Domingo Iturrate dohatsua lagun dogula, mundu honen gaisotasuna gogotan hartuz:

—Elizearen alde: gure gizarteak bazterreratzen dauzan gaisoen, zaharren, behartsuen, aurrean erabilien edo ezertarako ez dauzanen ondoan egoten jakin daian, gizarte alkartuagoa eta arduratsuagoa sustatzeko, *eskatu deiogun Jaunari*.
—Sinismena debozino eta betekizun lez baino hartzen ez dabenen alde: Berbiztuaren aurkikuntzea egin daien, eta haren testigu izaten ahalegindu daitezan, ebanjelioaren bideetan, *eskatu deiogun Jaunari*.
—Gure etxeetan, ikastetxeetan, katekesian eta heziketa guztietan besteaganako begiramena(errespetua), hari harrera on egitea, eta haregaz norbera dana eta norberak daukana alkarbanantzea irakatsi daiten, *eskatu deiogun Jaunari*.
—Bizia besteen alde emoten daben boluntario, misiolari, etxekandre, eta gaisoen eta zaharren laguntzaileen alde: euren lanean poztasuna eta zorion-izpiak hartu daiezan, euren ingurukoentzat erakargarri izateraino, *eskatu deiogun Jaunari*.
—Sinistun lez otoitzean Domingo Iturrate dohatsua omentzeko alkartzen garanok Ebanjelioa geuretu ahal izan daigun, ohitura eta betekizunetan itxiak agertu ez gaitezan, eta geure buruak, eliz alkarteak eta Elizea bera ere eguneratzen ahalegindu gaitezan, *eskatu deiogun Jaunari*.

† Zure maitasunaren barri egunero emoten deuskuzun Jainko Aita/Ama: bihurtu gaizuz maitasun horren eroale. Jesukristo gure Jaunaren bitartez.
—Amen.

**Oparien gaineko otoitza**
Onartu, Jauna, zure herriaren eskeintza;
zure Semearen maitasunak egin ebana ospatzen dogularik,

sendotu gaizuz, zure dohatsu Domingo Iturrate lez,
zuganako eta lagun-hurkoaganako maitasunean. Jesukristo.

**Prefazioa**
Jauna zuekin.......................................Eta zure espirituarekin.
Gora bihotzak.........................................Jaunagan daukaguz.
Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari................Egoki da eta zuzen.

Egoki da, bai, eta zuzen
non-nahi eta beti zuri eskerrak emotea,
Jauna, Aita guztiz santu,
Jaungoiko ahalguztidun betiko horri,
Jesukristo gure Jaunaren bitartez.

Zure dohatsu Domingo Iturrateren fede autormen ederraz
indar barria emoten deutsozu beti zure Elizeari,
eta argiro erakusten guri zure maitasuna;
zure salbamen-asmoa gugan bete dadin,
santuen ejenplu ederrak eragiten deusku
eta euren otoitzek laguntzen.

Horregaitik, geuk ere, aingeru eta santu guztiekin batean,
goresten zaitugu, Jauna,
poz betean kantari.

**Santu, santua, santua…**

**Eukaristi-Otoitza II** (Abadeak)

Santu zara, bai, Jauna, eta santutasun guztiaren iturri.
Santu egizuz, ba, ogi ta ardao honeik, zeure Espiritua isuriz,
Jesukristo gure Jaunaren
Gorputz † eta Odol egin daitezan guretzat.

Berak, saldu ebenean, eta bere gogoz kurutzera joiala,
ogia hartu eta eskerrak emonez,
zatitu eban, eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

**Hartu eizue ta jan guztiok hontatik:**
**hau neure gorputza da-ta,**

**zuentzat emongo dana.**

Afal-ondoan bardin, kaliza harturik,
barriz ere eskerrak emonez,
bere ikasleei emon eutsen, esanez:

**Hartu eizue ta edan guztiok hontatik:**
**hau neure odolaren kaliza da-ta,**
**itun barri ta betikoaren odola,**
**zuentzat eta guztientzat**
**pekatuak parkatzeko isuriko dana.**
**egizue hau neure oroigarri...**

V./ **Hau da sinismenaren misterioa**.

R./ Hil eta biztu zarala, Jauna,
zu barriz etorri arte
hau dogu hau Barri Ona.

Horregaitik, Jauna,
zure Semearen heriotzea ta biztuerea gogoratuaz,
biziaren ogia ta salbamenaren kaliza
eskeintzen deutsuguz,
zuri eskerrak emonaz
altaran zure zerbitzari onartu gaituzulako.

Eta apalik eskatzen deutsugu,
Kristoren gorputz-odolak hartzen ditugunok
Espiritu Santuak bat egin gaizala.

***JAINKO JAUNAREN ESPIRITUA***
***ZURE DOHAIEZ BETE MUNDUA***

Gogoan izan, Jauna,
mundu guztian zabaldurik dagoen zure Elizea;
eroaizu maitasun osora,
**Frantzisko,** gure aita santuarekin,
**Mario** gure artzainekin,
eta eliz-gizon guztiekin batean.

Gogoan izan, Jauna,

bizteko itxaropenean joan diran: **Ik...**
eta gure etxeko, senide ta hildako guztiak:
hartu egizuz zure aurpegiaren argitan.

Erruki zakiguz, arren, guk guztiok
betiko bizitzea jaritsi dagigun,
Jaungoikoaren Ama Maria dohatsuarekin,
Apostolu santuekin, Domingo Iturrate dohatsuarekin
eta gizaldi guztietan,
zure adiskide izan diran santuekin;
eurekin batean goratu zaiguzan.
Jesukristo zure Semearen bitartez.

**Honen bitartez, honekin eta honengan**
**zuri, Aita, Jaungoiko ahalguztidun horri**
**Espiritu Santuarekin batean**
**ospe ta aintza guztia**
**gizaldi ta gizaldi guztietan.**
— Amen.

***Salbatzaileak agindu ta irakatsiari jarraituz***
***bildur barik esan dagigun.***

GURE AITA zeruetan zarana
santu izan bedi zure izena,
etor bedi zure erreinua,
egin bedi zure nahia
zeruan bezela lurrean ere.
Emoiguzu gaur
egun honetako ogia;
parkatu gure zorrak
geuk ere gure zordunei
parkatzen deutsegun ezkero;
eta ez gu tentaldira eroan,
baina atara gagizuz gatxetik.

† Atara gagizuz, Jauna, gatx guztietatik, emoiguzu bakea gure egunotan, zure errukiari esker pekatutik bizi izan gaitezan eta estualdietan sendo; betiko zorionaren itxaropenean Jesukristo gure Salbatzailea noiz etorriko dan zain gagozela.

—Zeurea dozu erregetza; zeureak ospe ta indarra orain eta beti.

† Jesukristo gure Jauna, zeuk esana da apostoluei ‘bakea izten deutsuet, neure bakea emoten’; begira zure Elizearen sinismenari eta ez gure pekatuei, eta zeure gogoa denez, emoiozu elizeari bakea, emon batasuna, errege bizi zara-ta, gizaldi eta gizaldietan. —Amen.

† Jaunaren bakea beti zuekin.
—Eta zure espirituarekin.

† Emon deiogun bakea alkarri. **(Hemen, etxekoak agurtu)**
Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: Erruki, Jauna.
Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: Erruki, Jauna.
Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: emoiguzu bakea

## JAUNARTZEA (Abadeak)

† Hona hemen Jaungoikoaren Bildotsa, hona munduko pekatua kentzen dauana: zoriontsuak honen mahaira deituak:
—Jauna, ni ez naz inor zu nire etxean sartzeko, baina esaizu hitz bat eta osatuko naz.

**Jaunartzean**

1. Ogi hau jaten dauanak izango dau bizia.
Kaliz hontan aurkitzen da Jainko-odol guztia:
**R/. Hor dogu janaria ta hor gure edaria.**
2. Jaungoikoak deitzen gaitu: bera dogu janari.
Beragan dogu aurkitzen osasuna ugari.
**R/. Zelan begiratzen deutson Jainkoak gizonari!**

3. Danok gaur jaten badogu ogi bat mahai batean
ezin izan gorrotorik gaurtik gure artean.
**R/. Alkar maitatu dagigun Jesusen izenean.**

**Jaunartze ondorengoa**

Salbameneko sakramentuaren gozoaz hazi gaituzu, Jauna:

zure bihotz onari eske gagoz:
Domingo Iturrate dohatsuak lez alkar maitatuz,
zeruan beragaz aurkitu gaitezala. Jesukristo.

***Azken oharra***

Zeozer egin dogulakoan urten geike, edo gaisoenganako Domingoren jarrereaz kezkaturik eta gogoztaturik. Eta ez da bardin.

Si salimos con que hemos hecho algo, pero no con la veneración con que el Beato Domingo derrochaba por los enfermos, creo que nos quedaríamos en haber hecho una cosa "*bonita*".

Salgamos con la sensación de que nos acompaña Domingo con su sed de santidad. Y manifestémoslo amando como Jesús nos amó.

Orduantxe bai urtengo geukela Domingo Dohatsuak aseturik eta beraganako esker onez.

***Abestia***: ESKERRIK ASKO, JAUNA, BIHOTZ-BIHOTZETIK

—Domingoren omenez ospatu doguna
izan bekigu, Jauna, gogo-ondasuna.
—Gaisoaldiak eta bai eta gaisoek
izan gagiezala eurenak dan-danek.

**Onespena**

† Jauna zuekin. —Eta zure espirituarekin.
† Bedeinka zaizela... —Amen.
† Zoaze Jaunaren bakean. —Eskerrak Jainkoari.